# 08/16 SAN ROKE



## Sarrera abestia

**ZEIN GOZO TA EDER DAN** anaiok alkartu
eta danok batera Jainkoa goratu.

> [1] *Gora bihotzak eta guztiok egin kantu*
> *Jainkoak bere eskuz salbatuko gaitu.*
>
> [2] *Zabal gogoak Jaunaren hitza entzuteko*
> *bere nahia jakinik zuzen ibilteko.*

**Erantzun salmoa**

**0816-San Roke** Sal 111

*Udaia'23*

Zo- ri - o - ne - ko - a Jau - na - ri be - gi - ru - ne - deu - tso - na.

## R/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsona.

Zorionekoa Jaunari begirune deutsona,
haren aginduak biziro maite dituana.
Ahaltsua izango da lurraldean haren jatorria,
bedeinkatua zuzenen ondorea. R/.

Haren etxean ondasunak ugari izango dira,

haren eskuzabaltasunak betiko dirau
Ilunpean argia lez da zuzenentzat:
errukiorra, bihozbera eta zintzoa. R/.

Zoriontsua errukitu eta emoten dauana,
bere arazoak zuzen atontzen dituana.
Ez da inoiz kili-kolo egongo;
zintzoaren gogorapenak beti bizirik dau iraungo. R/.

**Gure Aita,** zeruetan zarana,
santu izan bedi zure izena
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia,
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak,
geuk ere geure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero,
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

**HONA BILDOTS EZTIA** egiazko ogia
zerutik da jatsia Jainko maitia.

[1] *Gure Artzain ona ta Egilea*
*Aitarik maiteena, zeru-emoilea.*

[2] *Hostian zaozala dogu sinisten*
*zeruan bezela hor gu maitatzen.*

[3] *Maitatuko zaitut orain lurrean*
*gero maitatzeko zeru ederrean.*

*4 Zinez gurtzen zaitut Jesus maitea
arren emoidazu goi-sinistea.*